

# JOAN BATEATZAILEAREN JAIOTZA
## 06/24

**HASIERAKO AGURRA**

Ondo etorri, senideok, Joan Bateatzailearen omenezko liturgia honetara.

Kezkatua gizona! Arduratua! Bere aldiko egoereaz urduri egoana; eta zeozer egin behar zala uste ebana.

Hori dala-eta, bere inguruaz apurtzea erabagi eban, eta bizi izateko beste era bat aukeratu eban, eta hau ozenki iragarri... Nazareteko Jesusen belarrietara heltzeraino, honen bihotza ere ikutzeraino...

Ikutuko ete dau geurea ere? Gure bizikereaz kezkaturik eta aldatu beharra daukagula uste badogu... bai! Ikutu gaizala, ba.

**DAMU-OTOITZA**

Isilune baten, autortu daigun gure epelkeria eta eskatu deiogun Jaunari, izan daiala guretzat erruki, eta bihozbarritu gaizala jai honen pozean. (Isilunea)

—Jesus Jauna, gainetatik agertu jakun Goiz-e**guz**kia zarana: Erruki, Jauna.

—Jesus Jauna, ilunpetan eta herio-itzalean bizi diranak ar**gi**tzen dituzuna: Kristo, erruki.

—Jesus Jauna, gure oinak bakebidean zu**zen**tzen dituzuna: Erruki, Jauna.

Erruki dakigula...

**Aintza**

**Lehenengo irakurgaia**

Amaren sabeletik aukeratua izan danaren kontzientzia dauka Isaias profeteak. Bere aukeraketa eta bere misinoa Jainkoaren dohaiak dira. Profeteak leialtasunez erantzuten deutso deiari eta herriaren aldeko misinoari.

**Isaias Profetaren liburutik** (Is 49, 1-6)

Entzun, ugarteok! Aditu, urruneko herriok!
Jaio aurretik dei egin eustan Jaunak,

amaren sabelean nengoala gogoratu zan nitaz.
Ezpata zorrotz bihurtu eustan ahoa,
bere eskupean babestu ninduan;
gezi zorrotz bihurtu ninduan eta gezi-ontzian gorde.
Eta esan eustan:
«Zeu zara nire zerbitzaria, Israel,
zure bidez agertuko dot neure ospea».
Nik, barriz, hau ninoan:
«Alperrik nekatu naz;
alperrik eta doan agortu ditut neure indarrak».
Baina Jaunagan egoan nire eskubidea,
Jainkoaren eskuetan nire lansaria.
Orain honan berba egiten dau Jaunak,
amaren sabelean eratu ninduanak haren zerbitzari izateko,
Jakoben leinuak harengana bihurtuarazoteko
eta Israel herria batzeko.
Ohorez jantzi nau Jaunak
eta neure Jainkoa izan dot indar.
Jaunak esan deust:
«Ez da nahiko zu nire zerbitzari izatea,
Jakoben leinuak berreraikitzeko
eta Israelen bizirik geldituak bihurtuarazoteko.
Nazinoen argitzat ezarriko zaitut,
nire salbazinoa lurraren azken mugaraino heldu dadin».
Jaunak esana.

**Sal 138, 1-2. 3-4. 5-6ab. 15ab eta 17**

Bere burua Jaungoikoaren egintza lez autortzen dauan fededun batek egindako salmoa abestuko dogu. Somau daigun Jainkoaren egintza garala.




**R/. Eskerrak Zuri, harrigarriro egin nozulako.**

Jauna, Zeuk aztertzen nozu eta ezagutzen, †
badakizu noiz jesartzen nazan eta noiz **<u>ja</u>**gitzen.

Urrundik barruntatzen dozuz nire **as**moak;
ohartzen zara noiz nabilen eta **noiz** natzan,
zehatz ezagutzen dozuz nire ibilbide **gu**ztiak. R/.
Zeuk eratu deustazu **ba**rrua,
amaren sabelean e**iho** nozu.
Eskerrak Zuri, harrigarriro egin no**zu**lako,
miresgarriak dira zure **e**gintzak! R/.

Barru-barruraino ezagutzen **nin**duzun,
nire hazur-maminak ez ziran Zuretzat **ez**kutu,
isilpean eratzen nihar**du**ala,
lurraren barruan ehunduz ni**no**iala. R/.

## Ebanjelioa

Lukas ebanjelariak aurkezten deuskun "Haurtzaroko Ebanjelioaren" egiturea iragarpen bi eta jaiotza biren arteko loturan oinarritzen da: Joan eta Jesus. Gaurko ebanjelioak Jainkoaren eskua agertzen deusku Joan Bateatzailearen jaiotza kontatzerakoan. Zutunik **ALELUIA** abestu daigun:




Zuri, umetxu horri,
Goi-goikoaren profeta deituko deutsue,
Jaunaren aurretik joango zara-eta
hari bidea prestatuz. R/.

## JAINKO-HERRIAREN OTOITZA

† Senideok: Jesusen bideak urratzeko, Joan bialdu eban Jaun-goikoari egin deiogun otoitz:

—Eleizaren alde: Jainkoaren Hitza eta aldien ezaugarriak beti kontuan izan daizan. *Egin daigun otoitz*.



—Gure agintari eta mundu guztiko agintarien alde: gizaki guztien eskubideak errespetatuz, zuzentasunez jokatu daien. *Egin daigun otoitz*.
—Gaur egun ere profetak behar ditugu: eleizan eta munduan zapalduak diranen egoerak salatu eta bardintasunaren eta anaitasunaren alde bultzatu gaiezan. *Egin daigun otoitz*.

—Euren bizitza eskeiniz besteen alde lanean dabizanen alde: Jesusen espiritua eurekaz izan daien eta gure laguntza eta solidaritatea ere izan daiezan. *Egin daigun otoitz*.
—Eukaristiarako alkartu garanon alde: Joan Bateatzaileari jarraituz, Kristo Jaunagaz alkartzeko bidea erakutsi deiegun gure ingurukoei. *Egin daigun otoitz*.
† Jainko Aita Ona, entzun gure eskari otoitza eta emon herriak behar dauana. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

**Jaunartzerako abestia**

[1] Ogi hau jaten dauanak izango dau bizia.
Kaliz hontan aurkitzen da Jainko-odol guztia:
**R/. Hor dogu janaria ta hor gure edaria.**

[2] Jaungoikoak deitzen gaitu: bera dogu janari.
Beragan dogu aurkitzen osasuna ugari.
**R/. Zelan begiratzen deutson Jainkoak gizonari!**

[3] Danok gaur jaten badogu ogi bat mahai batean
ezin izan gorrotorik gaurtik gure artean.
**R/. Alkar maitatu dagigun Jesusen izenean.**

**Amaieran**

Izantasun handiko gizona izan zan Joan Bateatzailea; aldi barriak itxaroten ebazan erlijino epelkerian bizi ziran aldi haretan. Badaukagu zer ikasi eta zer itxaron beragandik: adoretu gaizala, gure sinismena adorez bizi izateko, gaur egun behar diran sinistunak eta testiguak izan gaitezan.

**Ereserkia**

Ez da inon gizonik San Juan dan baizen

santu goitar t'haundirik arkitzen (bir).
Berau da Jaunan Seme zuzena
Jordanen bataitu ebana (bir).



“ENTZUN, GIZONAK! ENTZUN, HERRIAK!
SAN JUANEN DOHAI HARRIGARRIAK.
GORA GIZONAK! ABESTU HERRIAK
BERE GOITASUN GORAGARRIAK (bir). ”